7
Nahiz argia kentzen didan
ezin dut gorrotatu,
kaltetzen nauela nuen
tamalez baieztatu,
zokoan beharrez hartu
nuenetik ostatu,
konturatu nintzen hobe
dela xarma sustatu.

8
Ilargia dago horma
eta bion artean,
dirdira garbi eskainiz
igaro bitartean,
ilunki nagoen arren
itxita erbestean,
esperantzak sustraitu dit
poza begitartean.

*2014ko irailaren 21ean*

## 1974. urteko abenduaren 4an gertatu zen

1
Gaztaroan parte-hartu nuen lehen protestan
kasernan amaitu nuen izututa,
guardia zibil batek "pipa" jarri zidan tripan
ez higitzeko zakar oihukatuta,
Francoren diktaduran ikasleen eskaerak
politikoak lez zeuden ukatuta,
jasotako tratua txarra ez zen izan arren
bihotza sentitu nuen uzkurtuta.

2
Aitxari esan ziotenean gertatu zena
kasernara igo zen arduratuta,
orduan jakin izan nuen familiartea
zeukatela ezlekuan fitxatuta,
egun horretan kontzientzia ernatu zitzaidan
zapalkuntzaren kiratsa sufrituta,
hamasei urte nituen, aitxak berriz zituen,
iaz nituenak Puerton giltzatuta.

*2014ko urriaren 26an*

## Geure askatasuna

I

Autobusetik ustezko askatasuna
infinitua iruditzen zaizu,
tamalez hur dagoen arren urrun dago
guardia zibilekin zaudenean,
itxita zauzkate metalezko xafletan
espetxez aldatzen zaituztenean,
bidaian ikusmirak zaitu liluratzen
ortzemuga miraz duzu behatzen.
Mendiak, ibaiak, haranak... dakuskizu,
hiriak eta herrixka xumeak,
zeure txokokoak datozkizu gogora,
malenkonian zara barneratzen,
aspaldian ez dituzulako gozatu
eurekin irrikaz dagizu amets,
desiren eremu zabalean zabiltza,
geroa leihatilatik asmatzen.

2
Helmugara iritsi zara, espetxera,
ez da zaharra baina bai krudela,
isolamenduan zaude leihotik beha,
hormatzar gris bat daukazu aurrean,
zeru zerrenda bat dakusazu gorago
izpiak ziegan nekez sartzen dira,
euren artean dauden altzairuzko hortzek
arima minki zulatzen dizute.
Herrimina ernatzen zaizu bihotzean
argia poliki hasten denean,
txolarreen kantuek lasaitzen zaituzte,
papurrekin eskertzen dizkiezu,
zure bizitza metro batzuk direlako
diziplina zorrotzaren mendean,
arnasa sakon hartuta maizko diozu,
Euskal Herria da askatasuna”.

*2014ko azaroaren 9an*

## Diziplina ankerraren esparruan

1

Presozain eskasak diziplina hauspotzen duenean
esparru beltzuria bidegabe du itotzen,
gorrotoa hormen barruan astintzen hasten denean
gatibuari dio itxaropena lausotzen,
lar sufritzen ari denari etsipena hazten zaio,
arau gaitzekin atsekabea areagotzen,
ohartzen delako kasernakoak diren terrentekin
bizitza ari zaiola ezlekuan gaiztotzen.

2

Isolamenduan aginduak emateko unean,
katua txoriarekin antzo dira harrotzen,
gatibuak sakonki du menpekotasuna nozitzen,
burmuinean eragin petrala doa errotzen,
ohatzean egoera baikortasunez aztertuta,
ideia on bat ari zaio gogoan umotzen,
"begitartean irribarrea zaidanean loratzen,
agintariari diot boterea ehotzen".

*2014ko azaroaren 23an*

## Sakabanaketa hausteko etorri hintzen

"Espetxean nengoenean bisitatzera etorri hintzen",
esan ei zuen garbi Josuk parabola batean Judean,
praktika babesgarria milaka lagunek obratzen dute,
sakabanaketaren malkarretan duinki dabiltza urtetan,
zirriekin ez da emetatu itxaropena gogoetan,
isolamenduak ez ditu euskaldunen begiak ilundu,
nahiz larrutik pagatzen dihardugu zigor madarikatua,
udaberrian ihintzak onduko du maite dugun txokoa.

*2014ko abenduaren 7an*

## Askapenari (loreak ez ditzaten moztu)

I

Kapitalismo basaren izenean,
berekoikeriak zorrotz manatuta,
familia apaleko soldadua
antzeko jendeen kontra oldartzen da,
ez dutelako nahi garia banatu
loreak ari dira krudelki mozten.
Boterеak prestatzen du menpekoa
injustiziak iraun dezan Munduan,
plusbalioa bortxaz defendatzeko,
herri ahulei lurrak lapurtzeko,
langileen aldarriak isiltzeko,
zorigabea ustel dadin kartzelan.
Txorimaloa erabat dirutzen da
gezurrekin isiotutako gudekin,
behartsuak dihardu nonahi erailtzen,
behartsu ezjakinaren tiroekin.

2
“Aberatsaren haurrak aginduko du,
pobrearenak agindua beteko”,
doktrina miserablea lurperatzeko
elkartasuna gura dugu indartu.
Gabeziaren zoldura sendatzeko
zain dezagun haur lañoaren hezkuntza,
ez dadin sekula polizia izan,
ezta militar edo presozain ere.
Inork ez ditzala inon bonbak egin
urrutiko lurraldeak suntsitzeko,
izan dadila trintxera hutsala
eskubide mardulen lorategia,
kartzela bihozgabe ospitala,
kaserna gaitza jakintzaren eskola.
Berdintasuna hedatuko bagenu
loretxoek barre egingo lukete.

*2014ko abenduaren 7an*

## Horma bako etorkizuna desiratuz

1
“Isolamendu” hitza entzunda
minki diot “infernua!”,
zerua nekez dakusadanez,
“Luziferren erreinua!”,
airean dabil hormen barruan
mendekuaren kerua,
justiziak ez du ezagutzen
sugegorrien zorua.

2
Hormatzarrak du ohartu barik
askatasuna zanpatzen,
itxaropena zoko grisean
mila zatitan zartatzen,
presoak gaude bere mendean
jabea  dugu salatzen,
nahita delako txarto portatzen
estatua deitoratzen.

3
Kartzelan gaude halabeharrez
handikien mesedetan,
enpresak arras gizendu dira
gure kontura urtetan,
hormak ekoizten dituztelako
zitalki harrobietan,
zigorra dugu lazki pairatzen
gabeziaren ziegetan.

4
“Aurreko horma eraikitzeko
mendi bat dute zauritu”,
goizean ziplo zait bururatu,
berehala naiz larritu,
kartzelak dira toki krudelak
presoak sufritzen ditu,
aspaldi zaigu bizitza histu,
porlan petralaz urritu.

5
Kartzelak jaso ahala dute
natura bortxaz astintzen,
Ama-Lur ari dira birrintzen,
txanponen truke iraintzen,
horma honekin ikusmena da
argi barik bizkor mintzen,
bost metrotara dagoelako
sasoia zaizu erkintzen.

6
Gaur esan diot “ea zaituen
gizatasunak eraisten,
edo zugana gutxienez den
demokrazia iristen”,
“haserre gaude diguzulako
eguzkia lar murrizten,
ilusioa maizko zimeltzen,
gaituzulako bereizten”.

7
Hormen artean nabil korrika
etsipena uxatzeko,
ezlekuetan indartsua den
estresa deuseztatzeko,
etxartera naiz gogoz irteten
kideekin mintzatzeko,
"bihar herrira goaz" esanez,
gogoak kilikatzeko.

8
Kartzela gaitza danba nahi nuke
laga etorkizunean,
bitartean dut erabiliko
denbora modu onean,
sentimendua jorratzen nabil
etengabe garunean,
zuei bertso bat eskaintzeko
horma bako egunean.

*2014ko abenduaren 14an*

## Murruaren aurrean ametsetan

1
Murru gotorra esperantzaren muga da,
esperantza hozten duen  itzala,
gizatxarrak aspaldi altxatu zuen
lurruntzeko irriaren onura,
zerua du bidegabe ezkutatzen,
halaber ilunabarra ebasten.
Ezin dira goiko izarrak miretsi
ezta ilargiaren printzak ere,
begiek ez dute atsedenik hartzen
ez da ziegan atseginik sentitzen,
nahita ez egunak igarotzen ditut
panoramika berbera ikusten.

2
Ortzemuga nahi nuke berriz preziatu,
urte batzuk daramatzat itxoiten,
amets eginez dakuskit goiztiriak
distira bizia ez ahazteko,
mugarik gabe bizitzeko desira
gogoan dut sakon barneratuta.
Sentimenduan irudikatzen ohi dut
askamenaren une magikoa,
zeurekin naiz maizko elkartzen txokoan
maitasunak gidatzen nau zugana,
akorduan daudelako ederkiro
bilbatu genituen bizipenak.

*2015eko otsailaren 1ean*

## Sakabanaketa sufritzen dugulako

1
Gaur janaria dugu errefusatuko
kide bat bortxaz tratatu zutelako,
horrelako arriskuen mendean gaude
herrak gotorki dirauen kartzeletan.
Isolamendua jasaten dihardugu
gatazka ez dutelako konpondu nahi,
sakabanaketak xextrak handitzen ditu
bere izaera bortitza delako.

2
Euskal Herritik kanpo zaurgarriak gara,
horretaz aspaldi konturatu ginen,
zorionez ez gaude ziegetan lur jota
euskal bidera igaro garelako.
Herritarren urratsekin bat egin dugu
amnistia ehunduko dutelako.
Sarek bere sarean eramango gaitu
deserritik eskubideen zirrira.

*2015eko otsailaren 15ean*

## Zoriona konpartituz alai biziko gara

Zergatik ditugu ondasun materialak lehenesten
eta espiritituaren aholkuak ahazten?
Zoriona kontsumoak dakarrela uste dugunez
goraino beteta daukagu etxeko ganbara,
oporretan pozarren goaz ahalik eta urrunen
baina gero drogak hartzen ditugu baretzeko,
autoa bihurtu dugu bizitzaren erdigunea,
gizakiak  baino gehiago gara banakoak.
Ez gara konturatzen gu izadia garela ere,
suntsitu ahala arima tristatzen zaigula,
bizi gaitezkeela hobeto daukaguna konpartituz,
ederra dela maiteaz mirestea arratsa.

*2015eko apirilaren 12an*

## Isolamenduan iretargiari begira

1
Iretargia  kinka larrian ikusi nuen
ziegako leihoaren burdin saretik,
murruan dauden txarrantxetan atxilo zegoen,
hori zirudien ustel den ustetik,
edozein loretxo, zimela iruditzen zaizu
begiratzen  duzunean espetxetik,
urtetan askatasun barik bizi zarenean
tronpa zintezke zigorraren ertzetik.

2
Iretargi bete dakusat liluraturik
txarrantxa biribil baten hutsunean,
kexu nago barra handiei gogor helduta
gatibu dagoelako gauminean.
"Libre ikusi nahi zaitut izarrekin ortzian",
esan dut arranguraz ziega barnean,
nahiz neuri begira luzaroan egon nahi zuen,
joan ei da amesten hasi naizenean.

*2015eko maiatzaren 24an*



**Josu Ginea Sagasti**
1977
Larrabetzu

Atxilotze data: 2002ko abenduaren 19a.



Centro Penitenciario Almería (Acebuche)
Ctra. Cuevas de los Ubedas, km. 2,5
04071 El Alquián
Almería

## Txope izkutua

2011ko iluntze baten gertaturikoa da.

Eguna betiko moduan hasi zan, esnatu, errekontua pasa ta gosaltzera bajatu ginen.

Gero patio alboan dagoen gimnasioarena egiten duen gelatxo txikira sartu ginen, kirol apur bat egiteko gure bi lagun kolonbianoekin batera.

Goizeko paseotxua emon, abestian esaten dan moduen «...eta patioaren alde batetik, alde batetik bestera, batetik bestera paseatuaz gerra ematen dugula, gerra ematen dugula...».

Arratsaldean berriz dana normal ere, baina afalduta gero ziegara joan ta zerbait pikatzen ibili ginen, honarte gauza arrarorik ez.

Gero dutxatxoa hartu ta telebista ikusten jarri ginen, orduan gertatu zan minutu batzuk okupauta euki gintuen afera.

Bapatean, goiko literan zegoen kidea, Asier, hasi zan esaten:

– Asier: Haizu Josu, txoperik igo ahal dogu afaritik?

– Josu: Ez, ez dogu ezer igo.

– Asier: Ba txoperen kriston usaina dago hemen, ez ahal dozu usaintzen?

– Josu: Nik ez.

– Asier: Zelan ez. Kriston usaina dago eta!

– Josu: Ezetz ba!

Momentu horretan zalantzetan hasita nengoen, ea usaimena ondo neukan edo ez.

Total, literetatik salto egin genuela ta ziegan gure bilaketari ekin geniola, jakiteko ia nondik demontre zetorren txope usaina

Pentsatu gendun ere beharbada norbaitek txope zati bat bota ote zuen txabolo barrura, baina bapez, gure ikerketak ez zuen aurrera egiten, ez gendun txoperik topatzen, litera azpian, apaletan ta komunean ezer ere ez.

Orduan alboko txaboloan gure lagun nigeriarrari galdetu genion, ia bi metro neurtzen zuen gure lagunek ta gurekin batera jaten zeuan jantokian.

Beste preso askok moduan, askotan janaria igotzen du ziegara, baina kasu hauetan ia kantitate industrialetan.

Ba bai, taperrei kartolak jarri behar, ta bestela zabor poltsak ere betetzen dituzte.

Ordun, guk pentsatu gendun leihoan eukiko zuela txopea, freskoan egoteko edo, beraz gure afera argituko genuke pentsatuz haizearen ondorioz usaina etortzen zala.

Horman kolpe batzuk jotzen dizkiogu lagunari leihora irteteko, ta Asier hasten zaio berbetan:

– Asier: Aixu Patrick, ba ahal daukazu txopea leihoan? jatekoa?

– Patrick: Txope no, amigo.

Leihoan ez zeukala, orduan gure afera konponduta zegoela emoten zuen, baina ez, zeren minutu batzuetara gure horman jotzen du leihora irteteko, guri deitzen.

– Patrick: Vasco, amigo, saca la mano, coge.

Orduan ikusten dogu leihoaren izkinatxo baten erratza.

– Josu: Patrick, ¿qué quieres?

– Patrick: Madalenas y yogurth para tí.

Nonbaiten, Asieregaz berba einda gero, pentsatu zun gosea genuela edo jatekorik gabe gelditu ginela.

– Patrick: Preguntar antes si tengo txope.

– Josu: ¡Ah! Sí, pero que dice Asier que huele a txope.

– Patrick: ¡Ah, vale, vale!

Esan beharra dago, gure lagunak ez zuela oso ondo berba egiten españolez ta ulertu ere hortxe hortxe, beraz auskalo, pentsatuko zun zoratuta ginela, hainbeste txope gora ta behera.

Beno ba, berriro zakarrontzian begiratu, badaezpada, ta azeitunen latatxo bat zegoen, zehatzago, *Aceitunas Verdes Manzanilla Rellenas de Anchoa* eta beraien ur apur bat gelditzen zen barruan.

– Josu: Asier, ez da izango hau usaintzen dozuna ezta?

– Asier: Ez dut uste, ia, ekarri.

Ba bai, horixe zen, nonbaiten tematu zen txope usaina zela ta holantxe ibili ginen momentu eder baten.

Gero hurrengo egunetako gure guda oihua izan zena imajinatzen dozue zein zan, ezta? Aquí huele a txope!

## Txarli

Nondik datorren izen hori? Ba ez dakit, ointxe momentuan ez dot gogoratzen. Gogoratzen dot lehenengoz berataz berba ein joztienian, oso azkarra zala, ikusteko gatxa ta oso arin ibilten zala.

Ni baino nagusiagoa zen jendeak ikustea lortu zuen. Kontzertuetan, gazteek egindako batzarretan, gai ezberdinetako hitzaldiak entzuten, antzerkietan edo dokumentalak ikusten, bere begitxo ta belarriek ezer ez zuten galtzen.

Gu gazteagoak ginenak, ez genuen lortzen berarekin topo egitea, ta inoiz gure adineko batek komentatzen bazuen berarekin topo egina zuela, ba zalantzaz beterik gelditzen ginen, ez genekien egia edo gezurra zan.

Bitartean  ba herriko gaztetxean, Hori Bai izenekoan, jarraituten gendun hainbat gauzetan parte hartuten.

Gogoratzen naz Hori Baitxu deituriko txokoan xakean jolasten ikasi neuela, ta ziur ere, orain baino askoz hobeto jolasten neuela.

Asteburuetan gaztetxeak antolaturiko mendi irteeretara joaten ginen eskualdeko ta Mungiako lagunekaz, Txarli ez zan joaten, beste leku batzuetatik igotzea nahiago. Entzunda genuenez Txarlik noizbehinka gaztetxean antolaturiko hitzaldi, dokumental edo filmen proiekzioetara juten zala, ba gu ere gero ta gehiago joaten hasi ginen, baina horrela ere ez gendun oraindik ikustea lortzen.

Noski, galdetzen egongo zarie ia zelan demontre ez genuen ikusten, ba gu joaten ginela ez zan agertzen, bitxia ezta? Ba behar bada lotsati xamarra zen, ta entzunda geneukan tamainaz ere handia ez zala, beraz jende artean egon zitekeen ere.

Azkenean gu ere, Hori Bai-koen familian sartuak ginen, gaztetxeko partaideak ginen, ta orduan gure txanda izan zan hitzaldi, film, emanaldi, bazkari ta kontzertuak antolatzeko.

Ta orduantxe gertatu zan hainbeste denporaz itxaroten ari ginena, Txarli ezagutu genuen, bera ikusteko aukera euki gendun. Gu ere gaztetxeko partaideak izanda bere burua aurkeztea erabaki zuen nonbait, guri harrera egiteko, ongi etorri ofiziala emoteko.

Momentuan ulertu gendun zergatik arinago ez geunden ikusi, gure ahaleginak egin bagenituen ere.

Gaztetxean egondako gauza guztietaz asko daki ta egon diren aldaketak ikusi ditu ere, ta ziur ez dala inoiz urarekin busti.

Zergatik urarekin? Ba kontuan eukite urteak ta urteak daramatzala elizari pegatutako eraikin gaztetxe moduen, ba imaginatuko dozuenez eraikinak bere gorabehera euki deuz, ta pasatutako belaunaldi bakoitzak ba beti saiatu da ahal izan deuen moduen konpontzen, herriko jendean laguntzagaz.

Beno, kontua da garai batzuetan euria egiten zeuenean ba teilatuaren egoeragaitik ur piloa sartzen zala, gero beranduago teilatu berriarekin konpondu zan arazoa.

Behin baino gehiagotan hanka uretan sartu edo itokina bat buru gainean jausten zitzaigun, baina Txarli beti siku ibilten zan, hori bai trebezia.

Alde batetik normala, ezta? Belaunaldi asko ezagutu baititu ta Hori Bai-ko txoko guztiak ezagutu dituelako, ziur behin baino gehiagotan txoko hoietako baten gazte bikotea muxukatzen ari zela kontzertuaren musika entzunaz bera lasai lasai pasatuko zela inor konturatu barik, kontzertuaren argi koloredunen joan etorriak aprobetxatuz.

Pentsatuko dozue hori ez dala posible, hainbeste jende ezagututa, norbaitek ikusi behar zuela, ba  orain esango dotzuet zergatik zan hain zaila bera ikustea.

Gure Txarli, gaztetxero zaharrena, Hori Bai-en ikusi nuen sagu txuri bat da, benetako sagua, berak nahi zuenean agertzen, leku batetik bestera korrikan. Batzuetan bere ibilalditxoak egiten zituenean ta gurekin topo egiterakoan, batzarra ez gelditzeko, geldialditxo bat egiten zun, agurtzeko moduan, ta gero bere bidearekin jarraitzen zun ta guk geure batzarrekin.

Hori da gure lagun Txarli, noizbehinka agertzen dana, guztiei ilusioa emoten, ta beharbada jarraituko du berak nahi duenean agertzen, orain arte egin duen moduan belaunaldiz belaunaldi, gazteek egindako lana ikusten, ta Hori Bai-ko akerrekin batera herri bat gaztetxe bat aldarrikatuz, Hori Baiko bizipen pozgarri guztiak gordez.

## Igerilekuetako pirañak

Entzun izan dugu piszina daukaten gartzelak luxuzkoak direla.

Ba gu joan izan ginenean, Estremerako gartzelan nengoenean, astean behin ta ia 40 edo 50 minutu bakarrik egon gintezke, ta noski batzuei hori ere ez dotzie uzten. Dena dela, hasierako asteetan joan ginen, gerora ez, uraren egoeragatik.

Esan behar da ere hurrengo urteetan itxita egon direla krisiaren kontuagatik.

Goazen harira, hemengo piszinan hortzak bakarrik dituen piraña bat ikusi gendun, jabearekin ta guzti.

Kontuan eukita debekatuta zegoela saltoak emotea, korrika egitea etab... ba ez dakigu zelan jabeak piraña galdu zuen.

Piszinan minutu batzuk pasata, bere inguruan genbiltzan eguzki apur bat hartuten, orduan tipo bat ikusi gendun zerbait bilatzen ari zela uretara begira.

Pentsatu gendun erlojua, lepokoa edo belarritakoren bat jauziko zitzaiola, horrelako zerbait izango zela.

Beste guztiak hasi ziren begiratzen ia zerbait ikusten genuen, baina ura ez zegoen oso gardena.

Bapatean galdetu zioten jabeari ia zeren bila zebilen, ta ahoa zabaltzerakoan hortzak falta zituela ikusi gendun, total, hortzetako aparatoa galdu zuela.

Minutu batzuk beranduago bere lagun batek, hortzak ere falta zituenak, bueltatu zizkion, ur azpian topatu ostean.

Beraz kontuz piszinetako pirañekin.



**Xabier Aranburu Muguruza**
1962
Usurbil

Atxilotze data: 1991ko abuztuaren 6a.

Espetxean idatzitako bertso bilduma bat argitaratua du liburu batean:
*Aurrera nekez egiten baitu herdoildutako orratzak*
(Noaua!/Etxerat/Bota punttuba. 2007).



Centro penitenciario Herrera de la Mancha
Apdo. 77
13200 Manzanares
Ciudad Real

## Beatifikazioa

***Doinua: Mundu honetan holako gauzak***

1
Errepublikak eragozteko
frankisten inbasioa
hil zitun bostehun eliz jendeen
beatifikazioa
ospatu duen Vatikanoak
eragin du okasioa
faxisten esku "hildako apaizei"
eginda ukazioa
Francoren kolpe militarrak du
jaso bedeinkazioa.

2
Hamalau apaiz dira izatez
frankistek fusilatuak
elizkizunik gabe nonbaiten
zekenki lurperatuak.
Gaur izan dira bilaukeriaz
berriz, madarikatuak
orbandurikan utzi baititu
haien izen sakratuak
doatsutzea ukatu dien
Vatikano estatuak.

3
Gaurko ekitaldi ospetsuaren
ispiluaren begian
argi da ikusi ze mailan diren
trebeak zurikerian
martiriaren apologia
eginez era *heavyan*
boterearen zaldian doaz
irrifarra aurpegian
palioa ongi jantzita baina
ipurdia agerian.

4
Aita Santuak egin zien
txapelokerrei harrera
San Pedro plazan bildu direnak
dute antzeko karrera
Del Burgo eta Rouco Varela
beste askoren antzera
etengabean ahotik zaie
"Viva Cristo Rey" atera
eskuin muturrak aspaldi zuen
nahia primeran bete da.

5
Espainiako apezpikuen
barrutiko agintariak
eginak dira Opus Deirekin
mugimendu ugariak
azkenaldion ez dira alferrik
bihurtu aitzindariak
"ortodoxia katolikoa"
dotrinaren gidariak
nahi duten eran kontrolatzeko
Vatikanoko hariak.

6
Ospakizuna dela esan arren
Jaungoikoaren grazia
Vatikanoak bapo erein du
injustizien hazia
Moralitate atzerakoia
duela sendo itsatsia
bazterketaren fede itsuak
ekarri du desgrazia:
"Garaileentzat zerua eta
galtzaileentzat sasia".

7
Desagertuen familietan
oroitzak daude gordinik
belaunaldiak daramatzate
aztarnak aurkitu ezinik
edozein bazter-zokotan egon
litezkeela jakinik
topatu arte ezin baretu
bihotzean duten minik
Erromatik ez zuten espero
tamaina hortako irainik.

8
Hierarkia katolikoak
duenez dogmaren aura
harrokeriaz egin du murgil
historiaren putzura
bihotzetikan ezin kendurik
gurutzadaren kultura
bere aldekoak dohatsuturik
sorrarazi du haustura
bake santua ekarri ordez
gerra santuan sartu da.

## Hamarkada

Hamarkada bat daramak
otserriko ziega zatarrenetan giltzapetuta
espetxeetako araudi zorrotza haustea
gogorki zigortzen duten kartzelarien
uneoroko zaintzapean.
Izan ziega arruntean, izan zigor-ziegetan,
zeruertza jotzen duen ekaitza bailitzan,
sufrimenduak denboraren joanean
agerian utzi  dizkik orbainak buru-bihotzetan,
baina sendotasunez jarraitzen duk
Euskal Herriaren eskubideak aldarrikatzen
kartzelako egunerokotasun hitsaren plazan.
Urtez urte, hala egunez nola gauez,
maitasunaren eta elkartasunaren argi mardula
jaso dek Euskal Herritik
eta itsasargi garrantzitsu horren gidaritzapean
gatibutzako bide ilunetan zuzentasunez hoa aurrera
itxaropenaren ukendua sentituz,
askatasunaren egunsentia gerturatzen ikusiz.

## Bisita

Kabinetako zelai hotzean jasotako
zure hitz lagunkoien berotasunak
biziki babestu du nire bihotzaren biluztasuna.
Ene begiradaren arragoan oraindik lehertu ez den
irriño baten arrastoa antzematen diot
burni-leihotik begira nagoen hodeiertz urdinduari,
orainaldiaren atarian gogorarazi dit eta
memoriaren itsasoan olatu apaletan ainguratuta
geratu zaidala zure irrifarraren uhara.
Bisitan, denboraren orratza loeriak joa ez zegoenez,
solasaren hariari gogotik tiraka ibili gara,
hasieran, planifikatutako mintzagaiak jorratzen,
ondoren, inprobisazioaren sokan dantzatzen
hitzen orekari eusteko malabarismoak eginez.
Txarrantxa eta hormigoi ilunez jantzitako kartzelara
bihotz betean garraiatu duzu udaberriko argia
niri bide ilunetan ibiltzen lagunduko didana luzaroan
eguneroko zauriak goxatuz.



**Kerman Urizar de Paz**
1967
Bilbo

Atxilotze data: 1991ko ekainaren 6a.



Centro Penitenciario Algeciras (Botafuego)
Ctra. del Cobre, km. 4,5
11206 Algeciras (Cádiz)

## Zu berriz ikustean

Zu berriz ikustean,
bihotzetik sortzen zaizkit
sentimenduen datuak;
zu berriz ikustean,
nire barneko  hondartzak
alaitasunez bustitzen dira;
zu berriz ikustean,
noraezean dabilen nire txalupa
maite dudan portura
heltzen da;
zu berriz ikustean,
nire begietan
bizitza pizten da;
zu berriz ikustean...

*Botafuegos, 2014.11.01*

## Kunda

Preso gauden euskaldunok
hormaren beste aldeko mundua
handia eta zabala dela badakigu;
hala ere, hormaren alde honetan
espetxez-espetxez eramaten gaituztenean
gure mundua poltsa txiki batean
sartzen dugu:
Etxeko usain goxoa duten
        arropak eta maindireak;
maite ditugun begiradak eta irribarrez
        osatutako argazki-liburua;
paper eta ideal handiez betetako
        karpeta gorri hori;
lagunek oparitutako liburuak;
postal, gutun-azal eta maitasunez
idatziko ditugun orriz betetako
        beste karpeta bat;
eta horrela ibiltzen gara gora eta behera;
bihotzean, duintasunaren harrotasuna,
eskuan, gure mundu handia poltsa txiki batean.

*Valdemoro, 2014.10.30*

## Las estaciones

“En el corazón de todo invierno vive una palpitante primavera...”, decía el poeta; y ahora, cuando el viento se lleva el verano y todavía el fuego de agosto me abrasa las entrañas, desenredo la noche agitando el bolígrafo para sacarle las palabras que robando espacios al silencio me lleven hasta tus costas...

Desde el oleaje de esta carta quiero contarte que ha sido un verano con cielo durísimo sin escudo de nube con el que protegerme de las tristezas que se enconan. Por eso, aquí donde mi universo no alcanza más allá de tu mirada, jugando con tu nombre en mis labios, he tratado de hacer de estas ruinas un lugar habitable aprendiendo a vivir en la belleza de lo que ahora no es, pero puede ser...

Y así, asomado a la ventana del silencio, aguantando la mirada de las estrellas camino de puntillas por mis laberintos más profundos, y veo entrar el otoño con sus árboles desnudándose de dudas y certezas, mientras me llueve por dentro y los pétalos del tiempo caen lentamente...

Ya ves, yo que aprendí a soñar hasta en noches sin luna, que descubrí que el cielo es un mar sin olas y el amor es lo que mueve el sol y las demás estrellas, ahora, naufrago de mis sentimientos, temo que el frío invierno me congele los huesos y no sepa como abrigar nostalgias en los tiempos sin abrazos, que mi mar quede atrapado entre los pliegues del corazón, y la melancolía me guíe hacia playas desiertas...

Por todo esto y por algo más que no te cuento, me gustaría poder desordenar los días del calendario y que con la primavera nos broten hermosas flores en las ramas de nuestras ilusiones, para que la esperanza no se marchite y al amanecer despierten de nuevo utopías que cumplir cogidos de la mano, porque aunque ahora las sonrisas pesen en la boca yo sé que el tiempo se calcula por los latidos del corazón, y que para los que se aman de verdad hoy es siempre todavía...

Hablaba el poeta de esos duros inviernos de sol inventado y tal vez en este paraíso perdido de paisajes sin árboles, de océanos sin olas, y de tu ausencia presente, los  sueños sólo sean realidades sedientas, lo sé... pero aun así, en la soledad de este tiempo roto, perdido en la mirada del viento te extraño. Por eso al doblar la esquina de mis secretos recojo tus olas a la orilla del mar, la lluvia escribe tu nombre, y sigo las estelas que deja el corazón para poder acunarme en esta imperfecta y hermosa melodía de amor una noche más...

Y no es fácil, lo sé. Tal vez, tal vez todos estos sentimientos resulten increíbles; nunca es fácil, pero no ha habido verdad más pura...

P.D. Beti!!

Amets politak izan!!
Zurekin bat -maitasunez-

*Botafuegos presondegian, 2015eko iraila*


NAPAR ASKATASUNAREN ALDE
AMAYURKO ECHARRIAN BORROKA EGIN
ZUTEN GIZONAI
BETIKO ARGIA
1522


EUSKAL PRESO POLITIKOAK ETXERA !!
ZENTSURARI IPURDIA ERAKUTSI !!



**Aletxu Zobaran Arrieta**
1981
Gorliz

Atxilotze data: 2011ko martxoaren 10a.



Maison d'arrêt
40 boulevard des Nations
BP 351
69962 Corbas Cédex
Frantzia



IRAGANA ORAIN GERORA BIDEAN AURRERA BETI



**Mikel Orbegozo Etxarri**
1979
Intxaurrondo

Atxilotze data: 2005eko otsailaren 17a.

Hamaikatxo proiektutan bere margo eta irudien arrastoa aurkitu liteke. Ataramiñekookin bat *Preso Nago* (2010), *Preso Nago 2* (2013) eta *Ilargiraino!* (2015) ilustrazio liburuak argitaratu ditu.



Badajoz-Prisión Provincial.
Carretera de Olivenza, km. 7,3.
06071 Badajoz.

# EZ GAUDE BAKARRIK
(ZUEI ESKER!)

DISPERTSIOAREN BIDEZ EUSKAL PRESOAK JENDARTETIK ALDENDU NAHI DITUZTE.

COMO MÉTODO DE ALEJAMIENTO NO ESTÁ MAL, PERO ME PREGUNTO SI ALEJARÁ LO SUFICIENTE...

TRANQUILO! LOS DEL DEPARTAMENTO DE I+D DE INSTITUCIONES PENITENCIARIAS HEMOS DESCUBIERTO QUE SI DÓNDE CREEMOS QUE VAN A CAER COLOCAMOS UNA COLCHONETA ELÁSTICA, REBOTAN Y SE ALEJAN OTRO POQUITO MÁS!

ESE DEPARTAMENTO ES DINERO BIEN INVERTIDO!

BAINA BABES ZABALA JASOTZEN DUTE EUSKAL PRESOEK, HAIEKIN EGON AHAL IZATEKO EHUNDAKA KILOMETRO EGIN BEHAR BADIRA ERE.

TXORI BAT OTE DA? HEGAZKIN BAT AL DA? EDO SUPERHEROI BAT?

EZ! BISITA DAUKAGU!

ESPAINIAR ESTATUAN PRESOA SENIDEEKIN GELA BEREAN EGON BAITEKE, BIS A BIS-EN BIDEZ.

SENITARTEKO BIS A BIS-A, SENIDEEKIN, HILEAN BEHIN.

ZER MODUZ, TXIKITXO?

ONGI, AMA!

EGIA ESAN, EH?!

BAIBETZ...

BIS A BIS INTIMOA, BIKOTEAREKIN, HILEAN BEHIN.



ELKARBIZITZAKO BIS A BIS-A, 10 URTE BAINA GUTXIAGOKO SEME-ALABEKIN, BIKOTEAREKIN BATERA, HILEAN BEHIN EDO HIRU HILEAN BEHIN, ESPETXEAREN ARABERA.



ESTATU FRANTZIARREAN EZ DAGO BIS A BIS-IK, INTIMITATE UNEAK FALTA DIRELARIK. ESPETXE GUTXI BATZUTAN "BIZI FAMILIARREKO UNITATEAK" EZARTZEN HASI DIRA, BUNGALOW MODUKO HOIETAN 6, 12, 48 ETA 72 ORDUKO BISITAK EGIN DAITEZKEELARIK. KIDE GEHIENAK EZ DAUDE ESPETXE HOIETAN.




ESTATU ESPAINIARREAN BISITAK ASTERO IZATEN DIRA, KRISTALEZ BANATURIKO LOKUTORIOETAN, BERTARA SENIDEEZ GAIN AURREZ BAIMENDURIKO LAGUNAK SAR DAITEZKEELARIK.




HEGAN AGORTZEN DIRA 40 MINUTUAK, BAINA JASOTAKO INDARRA PRESOAREKIN GERATZEN DA.

ESTATU FRANTZIARREKO BISITETAN EZ DAGO KRISTALIK, PRESOAK ETA BISITARIAK ELKAR UKI DEZAKETELARIK, BAINA GELAREN BI ALDEETAKO LEIHOTXOETATIK KARTZELARIAK ZELATI EGOTEN DIRA, HAIEN USTEKO JARRERA DESEGOKIRIK IKUSTEKOTAN BISITA ETETEKO.



SARTU BERRITAN BISITA BAIMENAK LORTZEA HILABETE EDO URTEETAKO PROZESU LUZEA IZAN DAITEKE.

ESTATU ESPAINIARREAN TELEFONOZ ASTERO 5 MINUTUKO 8 DEI EGITEKO AUKERA DAUKATE PRESOEK, SOILIK BAIMENDURIKO 10 ZENBAKIETARA DEI DEZAKETELARIK.







ESTATU FRANTZIARREAN, EPAITU GABEKO PRESO ASKORI EZ DIETE DEI TELEFONIKOAK EGITEKO ESKUBIDEA AITORTZEN.

GUTUNA DA, IRISTEKO IA HILABETE BEHAR BADU ERE, SORPRESA GAITASUN HAUNDIENA DAUKAN KOMUNIKAZIO ERA, EZIN BAIT DA JAKIN EZ NOIZ ETA EZ NORENA IRITSIKO DEN, EZAGUN IZAN EDO EZ.




HILABETERO PAKETEA SAR DAITEKE PRESOAGANA, LIBURUAK, ALDIZKARIAK, ARGAZKIAK, ARROPA... IRISTARAZTEKO BAINA MERKANTZIA IKUSTEZIN BAT ERE JASOTZEN DU GUZTIAREKIN BATERA...




GEZURRA BADIRUDI ERE BATZUTAN KOMUNIKABIDEEN BIDEZ ERE IRISTEN DIRA SENIDE, LAGUN ETA INGURUKOEN ANIMOAK.




BITARTEKO TXIKI GUZTI HAUEN BIDEZ ETA INGURATZEN DITUEN JENDE ZORAGARRIARI ESKER, EUSKAL PRESOAK EZ DAUDE BAKARRIK.
BAKARRIK?!


MECAGÜEN EL I+D, EL CAÑON DISPERSADOR Y SU COLCHONETA ELÁSTICA!
LA PRÓXIMA VEZ LOS ATAMOS A UN COHETE SUPERSÓNICO!
FFFF
IGNICIÓN!



**Gorka Lupiañez Mintegi**
1980
Durango

Atxilotze data: 2007ko abenduaren 6a.



Centro Penitenciario Topas
Carretera N-630, km. 314
37799 Topas
Salamanca



**Itziar Moreno Martinez**
1982
Bilbo

Atxilotze data: 2011ko apirilaren 10a.



Fresnes - Maison d´arrêt
3, Allée des Thuyas
94261 Fesnes Cédex
Frantzia



NIRE GORPUTZEAN, NIK ERABAKI. 27 x 22 zm.
Akrilikoa mihise gainean.




EREDUZKO BASOAK, ZERU JOSIAK. Fresnes, 2014.
Teknika mixtoa: collage+boligrafoa.

Ereduzko basoak. Ereduzko borrokak. Ereduzko emakumeak. Nor da zeren eredu? Zer da noren eredu? Ametsak, oroitzapenak, borrokak, nahiak, desirak, minak, grinak... nireak, herriarenak, zureak, norenak? Amalurraren zintzotasuna, eskuzabaltasuna, dohako sexu jarioa, milurteko pazientzia; egiazkoa da lurra, hor ez dago nor engainatua, eman eta jaso: Preso guztiek zeru urdinarekin egiten dute amets: "verité ou préjugè?".
Topikoa probokatu, ametsetatik ekintzetara.



BURDIN ELORRI ARANTZA.
Akrilikoa paper gainean.



ZIZKA-MIZKA. 30 x 20'5 zm .




ELKARTASUNA.
Teknika mistoa (kollage+akrilikoa+tinta+...).

Kolorea. Zein kolorekoa da sufrimendua? Heriotzak ez du munduko txoko guztietan kolore berdina. ODOLA GORRIA DA, ez da grisa. Zer irakatsi digu historiak? Behin ta berriz errepikatzera kondenatuak al gaude? ZEIN KOLOREKOA DA zure borroka? Irentsi edo aurre egin? GORA MUNDUKO EMAKUME BORROKALARIAK ETA GORA HERRIEN ARTEKO ELKARTASUNA!



**Joseba Galarraga Arrona**
1959
Deba

Atxilotze data: 1999ko uztailaren 7a.



Centro penitenciario Valladolid
Ctra. Adanero - Gijon, km. 94
47011 Villanubla
Valladolid



**Xabier Aranburu Sagarminaga**
1979
Ondarroa

Atxilotze data: 2012ko maiatzaren 27a.



Mont-de-Marsan
Centre Pénitentiaire
Chemin de Pémégnan
BP 90629
40006 Mont-de-Marsan Cedex



**Oier Andueza Antxia**
1975
Durango

Atxilotze data: 2001. urtean.



Centro penitenciario Murcia II
Paraje Los Charcos
30191 Campos del Río
Murcia



**Ekhiñe Eizagirre Zubiaurre**
1984
Zarautz

Atxilotze data: 2013ko maiatzak 7a.



Fresnes - Maison d´arrêt
3, Allée des Thuyas
94261 Fesnes Cédex
Frantzia



**Itziar Plaza Fernandez**
1982
Bilbo

Atxilotze data: 2009ko uztailaren 4a.



Fleury Merogis
Maison d'arrêt des femmes
9, avenue des peupliers
91705 Saint-Geneviève des bois Cedex
Frantzia

## Tentsio altuko kabletan dantzan

Malabaristen moduan
oreka topatu nahian
tentsio altuko kableetan dantzari gabiltzan txoriak gara.

Bihotza kiskaltzeraino maite ditugun
lagunen indarraz egiten dugu egunerokoan aurrera,
ez baita borrokarako grina zaharrik
borroka grina oraina denean.

Elkarren irribarreen besarkadetan
urtzen garen izozkiak gara,
elkarren indarren pausaleku,
tentsioak askatzeko elkarren sorbalda.

Zer gara ba?

Aske hegan egin nahi dugun txori errariak.
Haize bolada traketsenak
hegoak astinduz eragozten ditugun arrano biziak.
Hegoak zabalduz
herria besarkatzea amets duten ameslariak.

Eta  hori lortu bitartean,
ezinbestean jarraituko dugu
tentsio altuko kableetan dantzan.
Ez baita borrokarako grina zaharrik
borroka grina eta pipermina
gu geu garenean.

## Askatasun nahia

Zulo txikitik so,
paisaia berberean galtzen zait begirada,
orain ilun, gero ateri.
Aspaldi joan zen elurra,
aspaldi zen urtu.
Aspaldi ziren urtu
begien atzean izoztutako
malkoak ere.

Zulo txikitik begira,
paisaia aldakorraren monotonia opari
nire begi txikientzat.

Zulo txikitik so,
arnastu ezinezko mendia,
zeharkatu ezinezko errepideak,
ezin uki ditudan harrizko etxeak,
laztandu ezinezko liliak.

Zulo txikitik,
monotonia aldakorra,
denbora aurrera doan seinale.

Zulo txikitik so,
artega,
zakur arrotzen ibilgailu hotsa,
begi ninien dardara eraginez,
izotz horma arantzadunak
nire barrunbeak orrazten,
odola izozten,
begi txikiak lausotzen.



Zulo txikitik begira,
ilargiaren argia,
begiek arnas dezaketen sosegua
bizirik sentitzeko egia.

Zulo txikitik so,
zulo handian ez jausteko arrazoiaren argia,
etorkizunerako zubia,
askatasunaren argazki txikia.

## Alez ale

Bazoazte alez ale,
bazoazte nire barrenetik hegan,
urrunegi askotan.
Petaloz petalo biluzten ari naiz,
udan ere hotz sentitzeraino.
Bizitzaren bidean
Mateo Txistu sarriegi dabilkit txistuka
Ez dut putzaldi gehiagorik nahi,
nire inguruan nahi baitzaituztet,
azaleko ileak legez, ni babestuz.
Eta lili honen zurtoinak
esan nahi dizuedan guztia adierazten du,
horrelaxe sentitzen bainaiz,
maitasun  dosi txikiak
nigandik eten eta
apurka-apurka
aldenduko balira bezalaxe.

## Porno-poema gourmand(a)

Hatzekin dantzan,
ohean balantzan,
hatza zure mingaina bailitzan
ene koban saltsan.
Gora, behera
            aurrera, atzera,
200km orduko martxan.
Uzta oparoa gaurkoan nire gorputzeko baratzan.

Izerdi eta dardarak,
azkartzen doaz taupadak.
Zorabiatzen nauten plazer danbadak.

Gozamenarekin hasitako elkarrizketan,
ezin gaurkoan eskegi,
gorputzak diosat lizunki,
            segizan, segi!

Beraz, gaur gaupasa,
sobredosi demasa!
Hatzetatik naiz ukabilera pasa.
            Hau sentsazio latza!

Jiraka dabilkit eskua alu barruan,
zukua atera nahian
goizetan laranjei moduan.



Zure aurpegia buruan,
hasi naiz oihuka eroen moduan,
eta ez dut utzi ezer barruan.

Esne tantak izterrean,
putzu bustia mihisean.
Plazeraren ilunabarrean,
zu bakarrik falta zaitut
nire aldamenean.

## Gora autodefentsa

Elkar erantziz
trapu zaharrak jantzi
Musuka
letaginak zorroztu
Mandragora botila
trago banaz hustu
Kortxoak errez
aurpegiak margotu

Armak beti eskuan
kuleroak buruan
irri maltzurra ahoan

Suaren bueltan dantzan
sorginon irrintzia:
kontra-ehiza hasi da
errautsetatik esnatu piztia.

Sasi guztien gainetik zerura tiro.
Hasi dezagun festa!
Ahizpa, kide, maitale
zuri, beltz, langabe
sorgin, puta, alujale
autodefentsa komandoz
bete plaza eta kale.

Kontra-ehiza hasi da
kalean da piztia
ofentsen kontrako defentsan
damurik ez despentsan
gora autodefentsa!

## Hartu giltza

Hartu giltza,
ireki zure barrua,
jalgi zure errena,
zure alde erratua.
Bidaiatu lubakiaren bestaldera,
beste horrenbeste garenon lurraldera.

Hartu giltza,
alda dezagun erretratua,
grisa bilaka koloretsua,
hezurra haragitsua,
matxoa maritxua,
Txanogorritxu otsoa,
naranja erdia osoa.

Hartu giltza,
eragin sarrailari,
irauli zure barrua,
hautsi inposatua,
dasta debekatua,
izan bekatua.

Normala norma bada,
hobe izan nomada.
Arauekiko ez etiko
antipatiko
gorputz atipiko
        anatomiko
        anotomiko
        atomiko
        despistatua.

## Paris gris hau

Paris gris honek
zementura itsasten nau.
Mingaina ezpain artetik ondoratzen,
eztarria itotzeraino.
Likatsu itsasten zait grisa azalera.
Zabor usaindun kolonia merkez
bustitzen nau,
arratoi eta katu kakaz
aurpegia igurtzi.
Ezin lohitasunetik askatu.

Atzapar luzez inguratzen nau,
limurtu nahian
eta azazkalaz azala zulatu.
Zulo orotarik jo nahi nau grisak
zulo bakoitza
ahulgune, alugune sinetsita.
Zementuz irentsi nahi nau Parisek
eta egunero nabil
grisetik erauzi beharrean.

## Debekatu nahi

Debekatu nahi dizkigute gona motzak,
aldizkarietako gorputz biluziak.
Debekatu dizkigute arropa gardenak,
ostegun gauetako pornoa.
Debekatu nahi dizkigute liburu erotikoak,
sexua, plazera!
Baina gaua iristean,
strip-teaseak egiten biluztuko gara,
eta gorputz garden biluzietan
egikarituko dugu gure porno propioa!
Ziega honetako hormez haragoko fantasietan,
behatz, mingain eta igurtziz
idatziko ditugu istorio erotiko ausartenak
gure gorputz sexudunetan.
Eta orduan, Pierre de Lancreren ondorengo espetxe inkisidore hauek
ezingo digute nahita ere bahitu
gure gorputzei darien gozamenezko plazera.
Sutan erretako sorgin ororen omenez
botako dugu aluetatik kea!

## Goiz gorri honetan

Hire ezpainen samurra
zetorkidan gogora,
goiza esnatzear den
egun gorri honetan.

Inkonszienteak
kosk egin dit
ezpainetako haragian.

Ebaki lizun hori ageri zainan
zoko horretantxe bertan.

## Era (ixilean) hila

***Arkaitz Belloni***

Kristalezko kutxan bahituta,
arrainontzi laukian, hilik!
Erreka sorlekutik urrun,
beira islakorraren aurka, tupust.
Tupust bakoitzean, min.
Hamahiru urte geroago,
metro karratu estuek
lepoa estutua,
erreka ur, herri egarriz
ito digute,
era ixilean hil, erail
bahitzaileen begi gupidagabeen aurrean!

## Bota harresia

Bota harresia
hautsi aulkiak
lehertu hormak
tirokatu kristalak
luza eskua
gerturatu gorputzak
estutu ipurmasailak
nahastu ezpainak
urratu arropak
zabaldu hankak
egin irrintzi
bota harresiak.
Bota beltzak
arau hertsiak
kristal atzeko begiak
ezleku itxiak.
Jaso ukabila
ireki begiak
gehitu indarrak
apurtu distantziak
egin garrasi
AaaaaaaaaaaaaaaaaaaaaaaaaaaaaMNISTIA!

## Fantasia

Zutik,
hormaren aurka kolpatu zara
hatzak tolestuz kolpatu dizkizut hormak
zure oinen izerdiz margotu dira baldosak.
Ez dakit hatzen magiaz altxa zaitudan horma bustian gora
sabaia urratuz, sabaia hausteraino kasik,
edo hegan egin duzun plazeraren zeruraino.
Burua galdu dut
zure bular tartean
zupatu dizut eskuineko bular punta
ezkerrekoa ondoren
bular arteko dildoa eztarriratu dut azkenik.
Berriz sartzeko eskatu didazu,
arinago, azkarrago
fluxuak nahastu ditugu
nire mingain beroa
zure ezpain hotzetan,
behatzak
hortz gosetien artean.

Lau hanketan ipini nauzu
aluaz bizkarra ureztatu
eta esku batekin heldu
lehertzear dudan zakila.
Bi eskuz ipurmasailak atximurkatu
eta tuz bete duzu nire ipurtzuloa.
Jo nauzu atzetik,
dildoa ondoratuz nigan
nire barrunbetan igurtziz,
bular masailak ipurmasailak talkatuz.
Jaso dut burua irrintzi batean
irristatu zaizkit eskuak lurrean
Galdu dut gogoa,
eta orain,
apurka- apurka
zure azpian lurruntzen doan
plazer putzua besterik ez naiz.

## Egun gorri

Luma gorriak
barrua gori
egun gorritan.

Haragia dardarka
azal bustitan
izerdiz tantaka
alu goritan
kartsu, likatsu
larru gorritan

Egun gorritan
            larru gorritan
bakarkako larrutan larrutzen garen azal gorriak gara

## Herrimin zaporedun bertsoak

Noan Euskal Herriraino
zeharkatuaz behelaino
ilun hau hortzetaraino
noan Euskal Herriraino.

Begiak itxiz banoa
inongo kobazulora
nonbait Mariren altzora
begiak itxiz banoa.

Xuxurla dabilkit dama
hator nigana laztana
har dezagun salda bana
xuxurla dabilkit dama.

Herriminikan baduzu
tragoxka bat emaiozu
Indarra beharko duzu
herriminikan baduzu.

## Ilargiari

***Doinua: Habanera***

Gaur gauean ilargia
bere luze zabaleran
mundua mugituko du
bere indarrez nahieran
belarrira eskari bat
nik nahi nioke erran
nola patriarka, elizkoi
aberatsek beren eran
herri xumea gauzkaten
txontxongiloen tankeran
sar ditzala guzti hauek
itsas gorako galeran
kontzientzian iturritik
dezagun guztiok edan
gorbatek ito aurretik
ea matxinatzen geran!

## Herriari

***Doinua: Irria***

Inguratzen nauena
hau leku itxia
gora so egin eta
horra eguzkia
begiak itxiz senti
dezaket argia
txikia zen guztia
da orain handia
a ze energia
ta indar izpia
nahiz ta ene maitiak
nahi nauten etsia
etxea urrun baina
hats dut herria!

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar** Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza. *2011.*

**Espetxetik at**
Borxa Urberuaga. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi baiz**
Ibon Muñoa. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. Hainbaten artean. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
Mikel Antza / Iker Moreno. *2012.*

**Fakin xokona**
Oier Goitia. *2012.*

**Sasian barna**
Xabier Makazaga. *2012.*

**Preso nago 2**
Mikel Orbegozo. *2013.*

**$Z^2$**
Mikel Antza. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
Jokin Urain. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
Ibon Muñoa. *2014.*

**Urte ilunak**
Nelson Mandela (itzulpena: Ekaitz Sirvent). *2014.*

**Ilargiraino!**
Mikel Orbegozo. *2015.*

**Burdin elorri arantzetan**
Joseba Arregi. *2015.*



**JOSU URIBETXEBARRIA BOLINAGA**
Arrasate 1955
Arrasate 2015.01.16

## Arrasateko Josu Uribetxebarriari

Harraparia poztu da Eperra hil zaigulako,
mortuak osasuna lazki kaltetu ziolako,
gorrotoak ospatu du desiratzen zuelako,
barreiaketa horretako eratu zutelako,
kideak tristaturik gaude ondradua zelako,
duintasuna zer den garbi erakutsi zigulako,
zerbait lasaitu gara kartzelan ez zegoelako,
azken hatsa maiteen ondoan eman duelako.

Eperra ez zaitez kezkatu zainduko dugulako,
plazak lehen lez euskaraz mintzatuko direlako,
utopia herrian hedatzen ari garelako,
goizero zeure ametsak berresten ditugulako,
amnistiaren zirria sentituko duzulako,
zeure izartxoak dir-dir gidatzen gaituelako,
Ama-Lurraren altzoan zoriontsu zaudelako,
gereziondoa mardul loratzen ari delako.

Ibon Muñoa Arizmendiarrieta

